WIKIPEDIA

# Lurra

*Artikulu hau eguzki-sistemako hirugarren planetari buruzkoa da; beste esanahietarako, ikus «Lur (argipena)».*

**Lurra** Eguzki-sistemako hirugarren planeta da, dentsoena eta bizia duen planeta ezagun bakarra. Datazio erradiometrikoa erabilita eta beste ebidentzia iturri batzuk hartuta, Lurra orain dela 4.500 milioi urte baino gehiago sortu zen[22][23][24][25]. Lurraren grabitateak[26] espazioko beste objektu batzuekin elkarrekintza du, bereziki Eguzkia eta Ilargiarekin, Lurraren satelite natural bakarra. Lurrak Eguzkiaren inguruan bira bat ematen du 365,26 egunean behin, urte gisa ezagutzen den denbora. Denbora honetan zehar Lurrak bere buruari 366,26 bira ematen dizkio[oh 2].

Lurraren biraketa-ardatza bere plano orbitalarekiko okertua dago, urtaroak sortuz[27]. Ilargiaren eta Lurraren arteko grabitazio elkarrekintzak itsasaldiak sortzen ditu, Lurra bere ardatzean egonkortzen du eta biraketa abiadura geldotzen du[28]. Lurra da Eguzki-sistemako planetarik dentsoena eta lau planeta telurikoen artean handiena.

Lurraren litosfera milioika urtetan gainazalean zehar higitzen diren plaka tektoniko[29] izeneko hainbat atal zurrunetan banatuta dago. Lurraren gainazalaren % 71 urez estalita dago[30]. Beste guztia kontinente eta uharteak dira, bertako aintzira eta ur-ibilguak kontuan hartuta. Poloak gehienbat izotzez daude estaliak, itsas-izotzak eta Antartikako izotz-geruza barne. Lurraren barnea oraindik ere aktibo dago, burdinazko barne-nukleo solidoarekin, eremu magnetikoa eragiten duen kanpo-nukleo likidoarekin eta mantu osatzen duen geruza lodi eta nahiko solidoarekin. Geruza hauek plaken tektonika eragiten dute.

Lurraren historiako lehen mila milioi urtetan, bizia agertu zen ozeanoetan, eta Lurraren atmosfera eta gainazala eraldatzen hasi zen, organismo aerobiko eta anaerobiko ugari sortuz. Ebidentzia geologikoaren arabera, biziaren jatorria orain dela 4.100 milioi urte eman zen, gutxienez. Hortik aurrera, Lurrak Eguzkiarekiko duen distantziak, ezaugarri fisikoek eta historia geologikoak baimendu du biziaren eboluzioa eta garapena. Lurreko biodibertsitatea milioika urtetan garatu da, era jarraituan hedatuz iraungipen masiboetan izan ezik[31]. Lurrean bizi izan diren espezieen % 99 baino gehiago iraungita dago[32][33][34]. Gaur egun zenbat espezie bizi diren eztabaidarako gaia da[35][36][37], espezie gehienak ez direlako oraindik deskribatu[38]. Lurrean 7.600 milioi gizaki bizi dira, haren biosferaren eta mineralen mende[39]. Gizakiek gizarte eta kultura ezberdinak garatu dituzte; politikoki, Lurrean 200 estatu burujabe baino gehiago daude.

## Eduki-taula



**Lurra ⊕**

Lurraren irudi elkartua, NASAk egina.

| | |
|---|---|
| **Izendapenak** | |
| **Izen alternatiboa** | Mundua, Ludia, Gaia, Amalur |
| **Ezaugarri orbitalak** | |
| Garaia: **J2000.0** | |
| **Afelioa** | 152 098 232 km (1.016 713 88 UA) |
| **Perihelioa** | 147 098 290 km (0.983 291 34 UA) |
| **Ardatzerdi handia** | 149 598 261 km (1.000 002 61 UA) [1] |
| **Eszentrikotasuna** | 0.016 711 23[1] |
| **Orbita-periodoa** | 365.256 363 004 egun [2] (1.000 017 421 urte) |
| **Batezbesteko abiadura orbitala** | 29.78 km/s[3] (107 200 km/h) |
| **Batezbesteko anomalia** | 269.05°[4] |
| **Makurdura orbitala** | 7.155° Eguzkiaren ekuatorera; 1.57869°[5] plano inbariantera. |
| **Goranzko nodoaren luzera** | 348.739 36°[3] |
| **Perihelioaren argumentua** | 114.207 83°[3] |
| **Sateliteak** | 1 (Ilargia) 1070 satelite artifizial 21 000 hondakin atal 10 cm baino handiagoak (2013-10-24)[6] |
| **Ezaugarri fisikoak** | |
| **Batezbesteko erradioa** | 6 371.0 km[7] |
| **Ekuatoreko erradioa** | 6 378.1 km[8] |
| **Poloko erradioa** | 6 356.8 km[9] |
| **Zanpaketa** | 0.003 3528[10] 1/298.257222101 (ETRS89) |
| **Zirkunferentzia** | 40 075.017 km (ekuatoriala) [8] 40 007.86 km (meridionala) [11][oh 1] |
| **Gainazal azalera** | |

| | | | |
|---|---|---|---|
| | 510 072 000 km²[12][13] (148 940 000 km² (29.2%) lehorra 361 132 000 km² (70.8%) ura) | | |
| **Bolumena** | $1.08321 \times 10^{12}$ km³[3] | | |
| **Masa** | $5.97219 \times 10^{24}$ kg[14] $3.0 \times 10^{-6}$ Eguzki) | | |
| **Batezbesteko dentsitatea** | 5.514 g/cm³[3] | | |
| **Gainazal grabitatea** | 9.807 m/s2 (1 *g*) | | |
| **Inertzia momentuaren faktorea** | 0.3307[15] | | |
| **Ihes-abiadura** | 11.186 km/s[3] | | |
| **Errotazio periodo siderala** | 0.99726968 d[16] (23h 56m 4.100s) | | |
| **Ekuatoreko errotazio abiadura** | 1,674.4 km/h (465.1 m/s)[17] | | |
| **Makurdura axiala** | 23°26' 21.4119 [2] | | |
| **Albedoa** | 0.367 (geom.)[3] 0.306 (Bond)[3] | | |
| **Gainazaleko tenp.** | **min** | **batezbeste** | **max** |
| **Kelvin** | 184 K[18] | 288 K[19] | 330 K[20] |
| **Celsius** | −89.2 °C | 15 °C | 56.7 °C |
| **Atmosfera** | | | |
| **Gainazaleko presioa** | 101.325 kPa (itsas mailan) | | |
| **Osaera** | 78.08% nitrogeno ($N_2$)[3] (aire lehorra) 20.95% oxigeno ($O_2$) 0.930% argon 0.039% karbono dioxido[21] ~ 1% ur lurrun (klimaren arabera) | | |

# Etimologia

*Lur* hitzaren jatorriaren inguruan eztabaida dago. Joseba Lakarrak bere erro monosilabikoen teorian kokatzen du jatorria, eta **dur* errotik datorrela dio[40]. Beste etimologia batek dio zelta jatorrikoa dela, eta «gainazala» edo «zorua» esan nahi zuen[41]; irlandera zaharrean *Lár* esaten zen[42] edo galesez *llawr*. Hitz hauek aitzinbritonieratik datoz, **lọr*[43]. Hitz honetatik hainbat eratorri daude hizkuntza zeltatan: *lor* bretoiera zaharrean eta *leur* bretoieraz zein kornubieraz, edo *laur* aitzinako galesez; guzti hauen esanahia «zorua» da[44]. Aintzinzelterazko **ɸlārom* hitzetik dator eta hau aitzinindoeuroperako **pleh₂rom* edo **ploh₂rom* hitzetatik. **pleh₂-* erroak «laua izatea» esan nahi du[45]. Hitz horretatik eratortzen dira ere latinezko *plautus* (oskoen 𐌐𐌋𐌀𐌖𐌕𐌀𐌃 hitzetik; «laua», «zabala»), *plānus* («laua») eta *planta* («landare») hitzak[46]. Latinezko hitz hauen jatorri berberekoak dira euskarazko «laua», «leun» eta «landare».

Lurraren sinonimo bezala hainbat hitz erabiltzen dira. Horietako bat *ludi* da, Sabin Aranak asmatutako neologismoa, *lu-* hitzari *-di* atzizkia gehituta[47]. Beste bat *mundu* da (gaztelaniaz: *mundo*, frantsesez: *monde*), latineko *mundus* hitzetik eratorria eta hau etruskotik (𐌌𐌖𐌈) edo aitzinindoeuroperatik (**mh₂nd-*). Jatorrian «garbia» edo «edertua» esan nahi du (konparatu kontrako *inmundizia* hitzarekin)[48][49].

Termino zientifikoak erabiltzen direnean, latinezko *terra* eta *tellūs* hitzak eta antzinako grezierako *γῆ* (*gē*) ere erabiltzen dira. *Terra* hitza terraformazio bezalako hitzetan erabiltzen da, eta aitzinindoeuroperako **ters-* hitzetik eratorria da, «lehorra»; *tellus* hitza *teluriko* bezalako hitzetan erabiltzen da, aitzinindoeuroperako **telh₂-o-* hizetik («zorua»); grezierazko *γῆ* hitza *geologia* bezalako hitzetan erabiltzen da; bertatik dator ere Lurra izendatzeko sinonimoa den Gaia.

# Kronologia

*Sakontzeko, irakurri: «Lurraren historia»*

## Sorrera

*Sakontzeko, irakurri: «Eguzki sistemaren sorrera eta garapena»*


Disko protoplanetarioaren irudikapen artistikoa.

Eguzki-sisteman aurkitutako materialik zaharrenak 4.567,2±0,6 milioi urte ditu[50]. Orain dela 4.540±40 milioi urte Lurraren lehen egitura osatu zen[51][52]. Eguzki sistemaren sorrera eta garapena aldi berean eman zen. Teorian, nebulosa edo disko protoplanetario batetik sortzen dira planetak. Grabitatearen ondorioz disko hori biratzen hasten da, eta biraketarekin lauago egiten sortu berria den izarraren inguruan. Planetak disko horretan ere sortzen hasten dira, grabitazioaren ondorioz. Nebulosa horretan gasak, izotza eta hautsa daude. Teoria nebularraren arabera, planetesimalak sortzen dira akrezioz, eta Lurra bezalako planeta batek 10 eta 20 milioi urte artean behar izan zituen osatzeko[53].

Ilargiaren sorrera ere Lurraren sorrerarekin batera ikertzen da. Ilargia orain dela 4.530 milioi urte inguru sortu zen[54]. Hipotesi nagusiaren arabera Marteren tamaina zuen objektu batek, Tea izenekoa, Lurraren aurka jo zuen eta kanporatutako materialaren akrezioa sortu zen Ilargia[55]. Ikuspegi honen arabera Theia Lurraren masaren % 10 inguru zuen[56], eta bere masaren zati bat Lurrean barneratu zen[57]. Orain dela 4.100 eta 3.800 milioi urte artean asteroide kopuru handi batek Lurra eta Ilargiaren aurka jo zuen, Bonbardaketa Handi Berantiarra deitu den fenomenoan. Lurraren inguruan eragin handia izan zuen, baina bereziki Ilargiarenean.

## Historia geologikoa

*Sakontzeko, irakurri: «Garai geologiko»*

Lurraren atmosfera eta ozeanoak sumendien aktibitatearen eta desgasifikazioaren ondorioz sortu ziren. Ur lurruna iturri hauetatik atera eta kondentsatu zen ozeanoak sortzeko, eta asteroide, protoplaneta eta kometen izotzarekin kopurua handitu zen[58]. Eredu honen arabera, atmosferako berotegi-efektuko gasek ozeanoak ez izoztea ekarri zuen, Eguzkiak garai hartan gaur egun duen Eguzkiaren argitasunaren % 70 baino ez baitzuen[59]. Orain dela 3.500 milioi urte Lurraren eremu magnetikoa eratu zen, atmosfera Eguzki haizeak eramatea ekidin zuena[60].

Lurraren kanpoaldean zegoen magma urtua solidotzen hasi zen geruza bat sortuz. Bi eredu daude gaur egun prozesu hau azaltzeko[61]: batean lur lehorreko masak pixkanaka sortu ziren gaur egungo formara iritsi arte[62]; bestean, probabilitate handiagoarekin, sorrera hori azkarra izan zen[63] Lurraren historiaren lehen uneetan, eta ondoren mugimendurik gabeko egoera kontinental egon zen[64][65]. Kontinenteak plaken tektonikaren ondorioz sortu ziren, Lurraren barnealdearen bero galeraren ondorioz. Ehunka milioi urte pasa eta gero, superkontinenteak sortu eta bereizi dira behin eta berriz. Orain dela 750 milioi urte Rodinia izeneko superkontinentea hautsi zen. Ondoren berriro elkartu ziren, Pannotia izenekoa sortzeko orain dela 600-540 milioi urte artean. Hau berriro apurtu eta Pangea osatu zen, orain dela 180 milioi urte hautsi zena[66].

Hainbat alditan glaziazioak egon dira, adibidez Neoproterozoikoan ia-ia lur osoa izotzez estali zen[67][68]. Gaur egungo izotzaren distribuzioa orain dela 40 milioi urte inguru hasi zen, eta izotza orain dela 3 milioi urte hasi zen handitzen. Latitude altuko eremuetan glaziazio ezberdinak eman dira ziklikoki hortik aurrera, 40.000 eta 100.000 urtean behin. Azken glaziazio kontinental handia orain dela 10.000 urte amaitu zen[69].


Play media
Lurra izotz-bola bat izan zenekoa

### Biziaren jatorria eta eboluzioa

*Artikulu nagusia: «Biziaren jatorria»*

Orain dela 4.000 milioi urte inguru euren burua erreakzio kimikoz erreplikatzeko gai ziren lehen molekulak sortu ziren. 500 milioi urte beranduago azken arbaso unibertsal komuna bizi izan zen[70]. Fotosintesiari esker Eguzkiaren energia zuzenean eralda zitekeen biologian. Sortutako oxigeno molekularrak ($O_2$) atmosferan metatu zen, eta eguzki-erradiazioaren izpi ultramoreen ondorioz ozono geruza ($O_3$) sortu zen atmosferaren goiko geruzatan[71]. Zelula txikiak beste handiagoen barruan sartuz eukarioto izeneko zelula konplexuak sortu ziren[72][73]. Zelula-koloniak geroz eta espezializatuago bilakatu ziren, eta horrekin lehen organismo zelulaniztunak sortu ziren. Ozonoak eteten zuen erradiazio ultramorea gutxituz, Lur lehorra kolonizatu zuen biziak[74]. Bizitzaren lehen ebidentzia fosila Australiako Mendebaldeko hareharri batean aurkitutako orain dela 3.480 milioi urteko mikrobioak daude[75]. Groenlandiako arroka metasedimentario batzuetan orain dela 3.700 milioi urteko grafito biogeniko arrastoak aurkitu dira[76]. Australian ere orain dela 4.100 milioi urteko material biotikoa aurkitu da[77][78]. Hala ere mikroorganismoak zuzenean erakusten dituen ebidentzia zuzenik zaharrena orain dela 3.450 milioi urtekoa da[79][80].


Ezagutzen diren izaki bizidunik zaharrenak fumarolatan bizi ziren mikroorganismoak ziren, orain dela 4.280 milioi urte inguru sortuak.

Neoproterozoikoan, orain dela 750 eta 580 milioi urte, Lurraren gehiengoa izotzez estali zen. Elur-bola Lurra deitu den hipotesi hau oso interesgarria da ondoren gertatutako Kanbriarreko leherketa aztertzeko, fosilizatzen ziren lehenengo animalia eta landareak azkar konplexuago egiten hasi baitziren[81]. Kanbriarreko leherketaren ostean, orain dela 535 milioi urte, bost iraungitze masibo izan dira[82]. Horietatik azkena orain dela 65 milioi urte gertatu zen, Kretazeo eta Tertziarioa bereizteko balio duen meteorito batek dinosauroak eta beste hainbat animalia hil eta ugaztunei bidea utzi zienean. Ugaztunak orain dela 66 milioi urte hasi ziren dibertsifikatzen, eta hainbat milioi urte beranduago *Orrorin tugenensis* izeneko primate batek zutik ibiltzeko gaitasuna eskuratu zuen[83]. Honek tresnen erabilera eta komunikazioa bultzatu zuen, burmuina gehiago estimulatuz, giza eboluzioaren oinarrian. Duela 20.000 urte, gizakiak nekazaritza garatu zuen, Neolitoko iraultzan, eta harekin batera lehenengo zibilizazioak sortu ziren orain dela 10.000 urte: horrek Lurraren itxura guztiz eraldatu zuen[84].

### Etorkizuna

*Sakontzeko, irakurri: «Eguzkia#Nukleoko_hidrogenoa_amaitu_ostean»*

Lurraren etorkizun urruna Eguzkiaren etorkizunari lotuta dago. Hurrengo 1.100 milioi urtetan, eguzkiaren luminositatea % 10 handituko da, eta hurrengo 3.500 milioi urtetan % 40 inguru[85]. Lurrazaleko tenperatura etengabe igoko da, karbonoaren ziklo inorganikoa bizkortuz eta $CO_2$ kontzentrazioa gutxituz, landareentzat hilgarria den punturaino (10 ppm C4 fotosintesirako) iritsiz hemendik 500-900 milioi urte inguru barru[86]. Landare gabeziak atmosferako oxigenoa galtzea ekarriko du, animalien bizia ere ezinezko eginez[87]. Beste mila milioi urte pasata, lurrazaleko ur guztia desagertuko da, eta batez besteko tenperatura globala 70 °C inguru izango da[88]. Puntu horretatik aurrera, Lurrean bizia egon daiteke beste 500 milioi urtez, edo 2.300 milioi urte atmosferatik nitrogenoa kentzen bada[89]. Eguzkia egonkorra balitz ere betirako, hurrengo mila milioi urtetan ozeanoetako uraren % 27 mantura jaitsiko da, ozeano erdiko gandorretan ez delako nahikoa lurrun aterako[90].

Eguzkia erraldoi gorria izango da hemendik 5.000 milioi urte ingurura. Ereduek aurreikusten dute Eguzkiaren tamaina handituko dela UA 1 izan arte (150 milioi kilometro), gaur egun baino 250 aldiz handiagoa[91][92]. Lurraren patua zein izango den ez dago hain argi. Erraldoi gorri gisa, Eguzkiak bere masaren % 30 inguru galduko du, beraz itsasaldien efektuen ondorioz Lurra 1,7 UA ingurura urrunduko da (250 milioi kilometro) Eguzkiak bere erradio maximoa duenean. Izaki bizidunik egongo balitz, ia guztia (edo agian guztia) desagertuko litzateke Eguzkiaren argitasuna handitu delako (gaur egun duena baino 5.000 aldiz distiratsuagoa izango da)[85]. 2008an egindako simulazio batek erakutsi zuen Lurraren orbita erortzen joango dela, pixkanaka, Eguzkiaren grabitazioaren tiraldiaren ondorioz. Kromosferan sartzen den momentuan Lurra lurrundu eta desagertuko da[91].

## Ezaugarri fisikoak

### Forma

Lurraren forma esferoide oblatu batena da. Errotazioaren ondorioz, Lurra zanpatua dago poloetan eta zabalduago ekuatorean[94]. Lurraren diametroa ekuatorean poloetan baino 43 kilometro handiagoa da. Beraz, Lurraren masa zentrotik urrunen dagoen puntua Ekuadorren dagoen Chimborazo sumendia da[95][96][97][98]. Esferoidearen erreferentziarako batez besteko diametroa 12.742 kilometro da. Topografia lokalak esferoide idealizatutik urruntzen du Lurraren forma, nahiz eta eskala global batean desbideraketa hauek txikiak dira Lurraren erradioarekin alderatuta: desbideraketa maximoa Marianetako itsas hobian ematen da, % 0,17, itsas-mailaren azpitik 10.911 metrora daudenak; Everest mendia 8.848 metrora dago itsas-mailatik, eta bere desbideraketa % 0,14 da[oh 3].



Lurraren topografia, bere zentrotik neurtua.[93].

Geodesian, Lurreko ozeanoek lur lehorrik edo itsasaldirik eta haizerik gabe hartuko lukeen formari geoide esaten zaio. Zehatzago esanda, geoidea da itsas mailan grabitazio ekipotentziala duen gainazala.

### Tamaina

Ekuatoreko zirkunferentzia 40 091 km-koa da, diametroa aldiz, ekuatorean 12 756 km-koa den bitartean, poloetan 12 730 km-koa da. Erreferentziazko bataz besteko diametroa 12 742 km ingurukoa da, gutxi gorabehera, 40 000/π. Garrantzitsua da jakitea, metroa definitzeko ekuatoretik Ipar Polora dagoen distantzia hartu zen ardatz gisa, Parisetik (Frantzia) pasata. Aipatutako distantziaren bat hamar milioirenek metro bat osatzen dute.

Lur planetaren tamainaren lehen neurketa Eratostenesek egin zuen, K. a. 240 urtean. Garai haietan Lurra itxura biribileko gisa irudikatzen eta onartzen zela esan beharra dago. Eratostenesek kalkulu konplexu hau egiteko Eguzkiak solstizioan zegoenean argitzen zuen lur eremuaren angelua neurtu zuen, Alexandriatik eta Sienatik, bi hiri hauen arteko distantzia 750 km-koa izanik. Egindako kalkuluei esker eskuratu zuen neurria 12 000 km-ko diametroa izan zen eta 40 000 km-ko zirkunferentzia, gaur egungo datuetatik oso hurbil egon zen, izan ere, % 6-ko akatsa baino ez zuen egin.

Urteak pasa eta handik mende bat ingurura, Apameako Posidoniok, helburu berdinarekin, kalkuluak egiten hasi eta emaitza ezberdinak atera zitzaizkion. Haren arabera, 29 000 km-ko zirkunferentzia eduki beharko luke gure planetak, gaur egungo datuak begiratuz gero, zehaztasun gutxikoak direla jakingo dugu. Ptolomeok balio hau onartu zuenez, hurrengo mendeetan zehar erabilia izan zen, Eratostenesenak erdi ahaztuta geratu ziren bitartean. 1521ean Magallaesek gure munduari itzuli osoa eman zionean, Eratostenesen neurria berrezarri zen.

## Konposizioa

Lurraren masa 5.97×10$^{24}$ kg inguru da. Batez ere burdinez (% 32,1), oxigenoz (% 30,1), silizioz (% 15,1), magnesioz (% 13,9), sufrez (% 2,9), nikelez (% 1,8), kaltzioz (% 1,5) eta aluminioz (% 1,4 osatuta dago; gainontzeko % 1,2 beste elementu kimikoen trazak dira. Masaren segregazioaren ondorioz, nukleoa batez ere burdinez osatuta dagoela estimatzen da (% 88,8), nikel (% 5,8), sufre (% 4,5) eta beste elementu batzuen trazekin batera[101].

Lurrazalaren osagai nagusi ia guztiak oxidoak dira. Oxido ez direnen artean kloroa, sufrea eta fluorra daude, baina arroken % 1 baino ez dira. Lurrazalaren % 99 hamaika oxidok osatzen dute, batez ere silikatoak, alumina, burdin oxidoa, karea, magnesia eta potasak[102].

Lurrazalaren konposizio kimikoa[99][100]

| Konposatua | Formula | Konposizioa | |
|---|---|---|---|
| | | Kontinentala | Ozeanikoa |
| silikatoak | $SiO_2$ | %60,6 | %48,6 |
| aluminio oxido | $Al_2O_3$ | %15,9 | %16,5 |
| kaltzio oxido | $CaO$ | %6,41 | %12,3 |
| magnesio oxido | $MgO$ | %4,66 | %6,8 |
| burdin oxido | $FeO_T$ | %6,71 | %6,2 |
| sodio oxido | $Na_2O$ | %3,07 | %2,6 |
| potasio oxido | $K_2O$ | %1,81 | %0,4 |
| titanio dioxido | $TiO_2$ | %0,72 | %1,4 |
| fosforo pentaoxido | $P_2O_5$ | %0,13 | %0,3 |
| manganeso oxido | $MnO$ | %0,10 | %1,4 |
| **Guztira** | | **%100,1** | **%99,9** |

## Barne egitura

*Sakontzeko, irakurri: «Lurraren egitura»*

Lurraren egitura, beste planeta teluriko guztietan bezala, geruzatan bereizia dago. Geruza hauek izan daitezke kimikoak edo fisikoak. Bi eredu daude lurraren barnealdea azaltzeko, eredu geoestatikoa eta geodinamikoa. Lurraren egitura mekanikoa aztertzen badugu, eredu geodinamikoa izango dugu; erreologia bakarrik aztertzen badugu, geoestatikoa. Eredu batean mantua dena eta bestean mesosfera denaren barnealdean nukleoa dago. Nukleoaren kanpoaldean biskositate oso baxua duen zona likido bat dago, eta barruan solidoa den barne nukleoa[103]. Barne nukleoak planetak baino pixka bat azkarrago biratzen du, 0,1-0,5º inguru gehiago urtean[104]. Barne nukleo honen erradioa lurraren bosten bat da.

### Eredu geostatikoa

- Lurrazala: kanpoko geruza da eta ozeanoetan dituen 12 km-tik kratoietan dituen 80 km-taraino irits daiteke. Batez ere basalto eta granitoz osatuta dago.
- Mantua: lurrazalaren eta nukleoaren artean dagoen geruza da. 2900 km.ko sakonerara iristen da. Mantua batez ere peridotitaz osatua dago. Lurrazalaren eta Mantuaren arteko banaketa Mohorovičić etenunean egiten da. Mantua goi eta behe mantuan bana daiteke. Biak ezberdintzen diren puntua Repettiren etenunea da.
- Nukleoa: 3.475 kmko lodiera duen geruza da. Mantutik Gutenberg etenuneak bereizten du. Burdina eta Nikelez osatutako aleazio batez osatuta dago eta eremu magnetikoa sortzen den lekua da. Barne eta kanpo nukleoan bereiz daiteke. Barne nukleoa solidoa dela uste da eta kanpo nukleoa likidoa da. Bien arteko ezberdintasuna Lehman etenunean ematen da.




Eredu geoestatikoa eta geodinamikoa erakusten duen eskema.

### Eredu geodinamikoa

- Litosfera: modu elastikoan jarduten duen goiko azala da. 250 km-ko lodiera du eta lurrazal osoa eta mantuaren zati bat hartzen ditu.
- Astenosfera: fluxu eran portatzen den mantuaren zatia da. Geruza horretan uhin sismikoen abiadura jaisten da.
- Mesosfera edo behe mantua. Mineralak dentsoagoak bilakatzen dira euren konposaketa aldatu gabe.
- D geruza: mesosfera eta endosferaren arteko trantsizio aldea da. Arrokak asko berotu eta litosferaraino igo daitezke sumendiak sortuz.
- Endosfera: eredu geoestatikoko nukleoaren parekoa da.

## Beroa

*Sakontzeko, irakurri: «Lurraren bero fluxua»*

Lurraren barne-beroa akrezio planetarioak sortutako hondar-berotik (% 20) eta desintegrazio erradioaktiboak sortzen duen berotik (% 80) dator.[105] Lur planetaren kasuan, bero gehien ekoizten duten isotopoak hauek dira: potasio-40, uranio-238, uranio-235 eta torio-232.[106] Planetaren erdigune edo nukleoan, tenperatura 7000ºK-etara eta presioa 360 GPa-ra iritsi daiteke.[107] Lur planetaren bero-iturri nagusia isotopoen desintegrazio erradioaktiboan oinarritutakoa denez, gure planeta gaztea zenean, bizitza ez oso luzeko isotopoak erabat desintegratu baino lehen, beroa askoz ere handiagoa eduki behar izan zuela diote zientzialariek. Bero ekoizpen gehigarri honek, gutxi gorabehera duela 3000 milioi urte gaur egungoaren bikoitza zena,[105] planetaren barneko tenperatura gradienteak areagotu izanaren aukera aintzakotzat hartzeko modukoa da. Hau hala izan bazen, mantuaren konbekzioa eta plaken tektonika askoz ere nabariagoa izango zen eta beraz, komatiten antzeko harri igneoen eraketa bideragarria. Bestela esanda, aipatutako harrien existentzia azalduko zuen tenperatura gradienteak areagotu izanak.[108]



Lurraren bero fluxua.

Gaur egun bero ekoizpen handiena duten isotopoak[109]

| Isotopoa | Igorritako beroa<br>Isotopoa Watt/kg-ko | Batez besteko bizia<br>Urtetan | Mantuan dagoen batez besteko kontzentrazioa<br>Kg isotopo/kg mantuko | Igorritako beroa<br>Mantuan W/kg |
|---|---|---|---|---|
| $^{238}$U | 9,46 × $10^{-5}$ | 4,47 × $10^{9}$ | 30,8 × $10^{-9}$ | 2,91 × $10^{-12}$ |
| $^{235}$U | 5,69 × $10^{-4}$ | 7,04 × $10^{8}$ | 0,22 × $10^{-9}$ | 1,25 × $10^{-13}$ |
| $^{232}$Th | 2,64 × $10^{-5}$ | 1,40 × $10^{10}$ | 124 × $10^{-9}$ | 3,27 × $10^{-12}$ |
| $^{40}$K | 2,92 × $10^{-5}$ | 1,25 × $10^{9}$ | 36,9 × $10^{-9}$ | 1,08 × $10^{-12}$ |

Lurraren bero-galeraren batez bestekoa 87 mW $m^{-2}$-koa da; hala hala izanda, planetaren bero-galera orokorra 4,42 × 1013 W-koa da.[110] Nukleoaren energia termikoaren zati batek, mantuko lumei esker gainazalerantz ihes egiten du, prozesu edo konbekzio mota hau tenperatura altuetan haitzak azaleratzean datza. Luma hauek puntu beroak eta basaltozko koladak eragin ditzakete.[111] Lurrak galtzen duen bero gehienak plaka tektonikoen artetik igaroz edo hauetatik iragazi eta ozeanoko dortsaletan dauden mantuaren azaleratzeetatik ihes egiten du. Gainerako galera guztiak litosferaren bidez gertatzen dira, batez ere ozeanoetan, bertan lurrazala kontinenteetan baino askoz ere meheagoa baita.[112]

## Plaken tektonika

*Sakontzeko, irakurri: «Plaken tektonika»*

Plaken tektonikaren teoriaren arabera, Lurraren azala plaka deritzen zenbait zatitan banatuta dago. Plaka horiek litosfera-zati mugikorrak dira; beraz, lurrazal kontinentalaz edota lurrazal ozeanikoz eta mantu zati batez osatuta daude, eta 80 eta 150 km bitarteko lodiera dute. Litosfera-zatiak edo plakak, denbora-eskala geologikoan, makurdurarekiko zurruntasunik gabeko fluido likatsuen gisan jokatzen duen astenosferaren gainean mugitzen dira, 1-20 cm/u bitarteko abiadurarekin[113]. Beraz, plakak esfera baten gaineko estalki-zati mugikor gisa irudika daitezke. Plaken etengabeko mugimenduen eraginez, esfortzu izugarriak sortzen dira, eta horiek plaken arteko mugetan lurrikara edo prozesu magmatikoen bitartez islatzen den deformazioa eragiten dute. Deformazioa, batez ere, plaken arteko mugetan pilatzen denez, plakek gorputz zurrun gisa jokatzen dutela onartzen da. Plaken mugimenduaren arabera, hiru muga-mota bereizten dira: muga dibergenteak, non plakak elkarrengandik urrundu egiten baitira (rift kontinentalak eta ozeano-gandorrak); muga konbergente edo subdukzio-eremuak, non plaken hurbilketa-mugimenduaren ondorioz plaka bat bestearen azpitik mantuan barneratzen baita; eta muga kontserbakorrak edo faila transformatzaileak, zeinetan plaken mugimendua horizontalki eta norabide berean gertatzen baita litosfera sortu edo deuseztatu gabe[114].



Munduko plaka tektonikoen mapa.



Muga motak adierazten dituen eskema

Plaken arteko mugak dira lurrazalean aurki daitezkeen eremurik ezegonkorrenak; horietan sortzen dira lurrikara eta sumendi gehienak, eta muga horietan garatzen dira Lurraren azaleko ezaugarri topografiko nabarmenenak (ozeano-gandorrak, ozeanoetako fosak eta mendikateak). Prozesu horiek erabiliz definitu dira lurrazala osatzen duten zazpi plaka nagusiak: Ozeano Barekoa, Ipar Amerikakoa, Hego Amerikakoa, Eurasiakoa, Afrikakoa, India-Australiakoa eta Antartikakoa. Horietaz gain, eskala txikiagoko dozena bat plaka definitzen dira; horien artean ezagunenak Ozeano Barearen ekialdean dauden Nazca eta Cocos plakak dira[114]. Cocos plaka da guztietan mugimendurik azkarrena duena, urtero 75 milimetro mugitzen baita[115]. Plakarik geldoena, aldiz, Eurasiar plaka da, 21 milimetrorekin urtean[116]. Plaka bat litosfera ozeanikoz soilik egon daiteke eratuta (Ozeano Bareko plaka), edo litosfera ozeanikoz eta kontinentalaz, baina sekula ez litosfera kontinentalaz soilik[114].

## Lurrazala

*Sakontzeko, irakurri: «Litosfera» eta «Forma geografiko»*

Lurraren azalera 510 milioi $km^2$ ingurukoa da.[117] Honen % 70,8, hau da, 361,13 milioi $km^2$ itsas mailaren azpitik dago eta itsas urez estalia dago.[118] Ozeanoen azaleraren azpian, plataforma kontinental gehienak, mendiak, sumendiak,[119] lubaki ozeanikoak, urpeko arroilak, goi-ordoki ozeanikoak, mundu osoa hartzen duten ozeano erdiko mendikateak daude. Gainerako % 29,2a, 148.94 milioi $km^2$, ez dago urez estalia. Leku batetik bestera erliebea oso ezberdina da eta mendiak, basamortuak, lautadak, goi-ordokiak eta bestelako forma geografikoak aurkitu ditzakegu bertan. Tektonika, higadura, sumendi-erupzioak, uholdeak, meteorizazioa, glaziazioa, koralezko arrezifeen hazkundea eta meteoritoen eragina dira Lurraren azalera etengabe birmoldatzen duten prozesuak, denbora geologikoan.[120][121]




Urik gabeko Lurra. Altuerak 20 aldiz handiagotuak daude. Klik eginez gero, irudia mugitu daiteke.

Lurrazal kontinentala dentsitate txikiko materialez osatua dago, esate baterako, granito igneoak eta andesita. Basaltoa ez da hain ohikoa urik gabeko lurrazalean, baina dentsitate gutxiago duen arroka bolkaniko hau ozeanoen hondoetako osagai nagusia da.[122] Arroka sedimentarioak lurperatuta geratu eta elkarrekin trinkotutako sedimentuek osatzen dute. Ia kontinenteko azaleraren % 75a arroka sedimentarioek estaltzen dute, nahiz eta lurrazalaren % 5 osatzen duten soilik.[123] Lurrean aurkitutako hirugarren arroka mota arroka metamorfikoa da. Mota hau jadanik existitzen diren arroka moten eraldaketaren ondorioz sortutakoa da, presio eta tenperatura altuen eraginez. Lurraren gainazalean silikatozko mineral ugarienak kuartzoa, feldespatoak, anfibola, mika, piroxenoa eta olibinoa dira.[124] Karbonatozko mineral arruntak kaltzita (kareharrian aurkitzen dena) eta dolomita dira.[125]

Lurraren azaleraren altuera Itsaso Hilaren -418 metroetatik (lurreko puntu baxuena), Everest mendiko 8.848 metroetara doa, hau delarik munduko punturik altuena. Itsas mailaren gainetik dagoen lurraren batez besteko altuera 797 metrokoa da.[126]

Pedosfera lurrazal kontinentalaren kanpoaldeko geruza da eta lurzorua eta lurzoruaren eraketa prozesuetan oinarritzen da. Landatu daitekeen lurrazala lurrazal lehorraren % 10,9a da, % 1,3 laborantza izanik iraunkorki.[127][128] Lurrazal lehorraren % 40 inguru nekazaritzan erabiltzen da: 16,7 miloi $km^2$ laborantzan eta eta 33,5 milioi $km^2$ larreetan.[129]

## Hidrosfera

*Sakontzeko, irakurri: «Hidrosfera»*

Lurraren azalera handiena urak hartzen du. Esan genezake, Lurraren azalerako 4 zatitik 3 ura direla. Ur masa guzti horri *hidrosfera* deritzo, eta ur gaziz eta ur gezaz osaturik dago. Baina ur gazi eta gezaren arteko banaketa ez da orekatua: ur guztitik % 94 ur gazia da eta % 6 bakarrik da ur geza. Ura izotz forman egon daiteke (solidoa), glaziarretan eta izotz-kaskoetan gertatzen den bezala, likidoa itsasoetan, lakuetan, ibaietan eta abarretan.

### Atmosfera

*Sakontzeko, irakurri: «Lurraren atmosfera»*



Lurraren hodeitza erakusten duen argazkia, NASAko *Moderate Resolution Imaging Spectroradiometer* tresna erabiliz aterata.

Lurraren itsas mailako presio atmosferikoa 101,325 kPa edo 14,696 psi-koa da batezbesteko[130], eta 8,5 km-ko altuera du[131]. Atmosfera lehor batean, osaera honakoa da: % 78,084 nitrogenoa, % 20,946 oxigenoa, % 0,934 argona eta karbono dioxido eta beste gas molekulen kopuru txikia.[130] Ur lurrunaren edukia % 0,01 eta % 4 artean dago[130], baina bataz beste % 1 inguru da[131]. Troposferaren altuera latitudearekin aldatzen da: poloetan 8 kilometrokoa da, ekuatorean 17 km-tara iristen delarik. Eguraldiaren eta urtaroko faktoreen arabera aldakuntza batzuk jasaten ditu.[132]

Lurraren biosferak bere atmosfera nabarmenki aldatu du. Fotosintesi oxigenikoaren ondorioz, duela 2,7 miloi urte sortzen hasi zena, gaur egun nitrogeno-oxigenoz osatuta dugun atmosfera osatuz joan zen.[71] Aldaketa horrek organismo aerobikoen ugaritzea ahalbidetu zuen, eta era ez zuzenean, ozono geruzaren eraketa, $O_2$ atmosferiko hori $O_3$an bihurtzen joan baitzen. Ozono geruzak eguzki-erradiazio ultramorearen oztopatzen du, Lurrean bizitza ahalbidetuz.[133] Bizitzarentzat garrantzitsuak diren beste funtzio atmosferikoak ur lurruna garraiatzea, gas erabilgarriak eskaintzea, meteoro txikiek azalera kolpatu aurretik erretzea eta tenperatura leuntzea lirateke.[134] Azken fenomeno hau berotegi-efektua bezala ezagutzen da: atmosferan dauden molekulek lurretik igortzen den energia termikoa harrapatzen dute, ondorioz batez besteko tenperatura igoz. Ur lurruna, karbono dioxidoa, metanoa, oxido nitrosoa eta ozonoa dira berotegi-efektua sortzen duten gas nagusiak. Beroaren atxikipen-efektu hori gabe, batez besteko tenperatura -18 °C izango litzateke, oraingo +15 °C-en aldean[135], eta ziurrenik Lurreko bizitza ez litzateke gaur egungo forman existituko.[136] 2017ko maiatzean, argi distira batzuk, milioika kilometrotara zegoen satelite batetik ikusi zituztenak, atmosferako izotz kristalek islatutako argia zela aurkitu zuten.[137][138]

#### Eguraldia eta klima

*Sakontzeko, irakurri: «Meteorologia», «Eguraldi» eta «Klima»*



Felix zikloi tropikala, 2007



Hodei lentikularra Antartikako Discovery mendian



Hodei handiak Mojaveko basamortuan, 2016

Lurraren atmosferak ez du muga zehatzik, poliki-poliki meheagoa bihurtuz eta kanpoko espazioarekin bat eginez doa. Atmosferaren masaren hiru laurden azaleraren lehen 11 km-etan dago. Beheko geruza honi troposfera deitzen zaio. Eguzkiaren energiak geruza hau eta azpiko gainazala berotzen du, airearen hedapena eraginez. Dentsitate baxuagoko aire hau igo egiten da orduan eta dentsitate handiagoko aire freskoagoak ordezten du. Mugimendu hauen emaitza da atmosferako zirkulazioa da, eguraldia eta klima eragiten dituena energia termikoaren birbanaketa bidez.[139]

Atmosferako zirkulazio-banda nagusiak 30º-ko latitudearen azpitik dauden ekuatore eskualdeko haize alisioak eta 30º eta 60º arteko latitudearen erdialdeko mendebaldeko haizeak dira[140]. Itsaslasterrak klima zehazteko faktore garrantzitsuak dira, batez ere, ekuatoreko itsasoetatik poloetako eskualdeetara energia termikoa banatzen duen zirkulazio termo-halinoa[141].

Gainazalaren lurrunketa bidez sortzen den ur-lurruna zirkulazio patroiek garraiatzen dute atmosferara. Atmosferako baldintzek aire bero eta heze hau gora igotzea baimentzen dutenean, ura kondentsatu egiten da eta prezipitazio gisa erortzen da lurrazalera[139]. Ondoren, ur gehiena ibai sistemen bidez altura txikiagoetara garraiatzen da eta normalean ozeanoetara itzultzen da edo aintziretara doa. Uraren ziklo hau funtsezko mekanismoa da bizitza babesteko eta azaleko egituren erosio faktore nagusia da, garai geologikoen denboran. Prezipitazioen ereduak oso aldakorra dira, urtero metro batzuetatik milimetro bat baino gutxiagoko prezipitazioetara. Atmosferako zirkulazioak, ezaugarri topografikoek eta tenperatura desberdintasunak eskualde bakoitzeko batez besteko prezipitazioa zehazten dute.[142]

Lurraren azalera iristen den eguzki-energia kopurua gutxitzen doa latitudea handitzen den heinean. Latituderik altuenetan, eguzki-argia angelu baxuetan iristen da lurrazalera, eta atmosferako zutabe lodiagoak igaro behar ditu. Ondorioz, airearen urte osoko bataz besteko tenperatura 0,4º C jaisten da ekuatoretik latitude gradu bat aldentzen den bakoitzean.[143] Lurraren azalera klima ia homogeneoetako latitude gerriko espezifikoetan banatu daiteke. Ekuatoretik poloko lurraldeetara klima tropikalak (edo ekuatorialak), klima subtropikalak, epelak eta polarrak aurki ditzakegu[144].

Latitudearen arau honek hainbat anomalia ditu:

- Ozeanoaren hurbiltasunak klima epeltzen du. Adibidez, Eskandinaviar penintsulak klima moderatuagoa du, antzeko latitudean dauden Kanadako iparraldeko zonaldeak baino.
- Haizeak moderazio efektu hau gaitzen du. Haizeak gehien jotzen duen lurraren aldeak klima epelagoa izaten du haizeak gutxien jotzen duenak baino. Ipar hemisferioan, haizea nagusiki mendebaldetik ekialdera joan ohi da eta mendebaldeko kostaldeek ekialdeko kostaldeek baino klima leunagoa izaten dute. Hau Ipar Amerikako ekialdean eta Mendebaldeko Europan ikusten da, non ekialdeko kostaldeek klima kontinental gogorrak izaten dituzten paralelo berdinean dauden ozeanoaren beste aldeko klimekin alderatuta.[145] Hegoaldeko hemisferioan, haize esanguratsuena ekialdetik mendebalderakoa da, eta ekialdeko kostaldeak leunagoak dira.
- Lurretik Eguzkira dagoen distantzia aldatu egiten da. Lurra Eguzkitik hurbilen (perihelioan) urtarrilean egoten da, hegoaldeko hemisferioan uda denean. Uztailean (afelioan) urrunen dago, ipar hemisferioan uda denean. Kasu honetan, lurrazaleko karratu batek perihelioan jasotzen duen eguzki erradiazioaren % 93,55a bakarrik jasotzen du. Hala eta guztiz ere, lur-masa handiak daude ipar hemisferioan, itsasoak baino berotzeko errazagoak direnak. Ondorioz, udak 2.3 ° C beroagoak dira ipar hemisferioan hego hemisferioan baino, antzeko baldintzetan.[146]
- Klima hotzagoa da altuera handituz doan heinean, aire-dentsitate txikiagoa dela eta.

Normalean erabiltzen den Köppen klima sailkapen sistemak bost talde zabal ditu (tropiko hezeak, aridoak, erdiko latitude hezeak, kontinentala eta polar hotza), gero azpi-mota zehatzagoetan banatzen direlarik.[140] Köppen sistemak lurralde zonaldeak sailkatzen ditu, behatutako tenperatura eta prezipitazioetan oinarrituta.

Lurrean neurtutako aire tenperatura altuena 56,7 ° C izan zen, Furnace Creeken, Kalifornian, Heriotzaren Haranean 1913an.[147] Lurrean zuzenean neurtutako aire tenperatura baxuena -89.2 ° C izan da, Vostok estazioan 1983an.[148] Hala ere, sateliteek teledetekzioa erabiliz −94,7 ° C neurtu dituzte, Ekialdeko Antartikan[149]. Tenperatura erregistro hauek XX. mendeko tresna modernoekin egindako neurketak baino ez dira eta litekeena da Lurraren tenperatura-gama osoa ez islatzea.

#### Goi-atmosfera

*Sakontzeko, irakurri: «Kanpo-espazio»*

Troposferaren gainetik, atmosfera normalean estratosferan, mesosferan eta termosferan banatzen da[134]. Geruza bakoitzak gradiente adiabatiko desberdina du, altueraren arabera tenperaturaren aldaketa-tasa definitzen duena. Horietatik haratago, exosfera magnetosferan desagertzen da, non eremu geomagnetikoak eguzki haizearekin elkar eragiten duen[150]. Estratosferaren barruan ozono geruza dago, lurrazala argi ultramoretik partzialki babesten duena eta beraz, Lurreko

bizitzarentzat garrantzitsua da. Kármánen lerroa, definizioz Lurraren gainazaletik 100 kilometrora dagoena, atmosferaren eta kanpo-espazioaren arteko muga izendatu bat da, lan egiteko balio duena[151].


Ilargi osoa, Lurraren atmosferaren eraginez pixka bat ilundua

Energia termikoak atmosferako kanpoaldeko ertzean dauden molekula batzuen abiadura handitzen du, eta uneren batean Lurraren grabitatetik ihes egin dezakete. Horrek atmosfera espazioan, era geldo baina egonkorrean, galtzen doala esan nahi du. Finkatu gabeko hidrogenoak masa molekular txikia duenez, ihes-abiadura errazago lor dezake, eta beste gas batzuek baino tasa altuagoan doa kanpo espaziora[152]. Espazioan hidrogenoa isurtzeak Lurraren atmosfera eta azalera aldatzen laguntzen du hasierako murriztapen egoera batetik, gaur egungo oxidazio egoerara. Fotosintesia oxigeno iturria da, baina erredukzio agenteen, hala nola hidrogenoaren, galera ezinbesteko baldintza izan zen atmosferan oxigeno metaketa zabala izateko[153]. Horregatik, hidrogenoaren atmosferatik ateratzeko gaitasunak eragina izan zezakeen Lurrean garatu den bizitzaren izaeran[154]. Gaur egungo oxigenoz aberatsen den atmosferan, hidrogenoa ura bihurtzen da ihes egiteko aukera izan aurretik. Horren ordez, hidrogenoaren galerarik handiena goiko atmosferan metanoa suntsitzean ematen da[155].

### Eremu grabitatorioa

Lurraren grabitatea objektuek jasaten duten azelerazioa da, Lurreko masa banaketaren eraginez. Lurraren gainazaletik gertu, grabitazio azelerazioa 9,8 m/s$^2$ ingurukoa da. Tokian tokiko desberdintasun topografiko eta geologikoek, baita sakonagoak diren egitura tektonikoen arteko desberdintasunek Lurraren grabitazio eremuan tokiko zein zonalde zabalagoetako desberdintasunak sortzen dituzte, grabitatearen anomaliak bezala ezagutzen direnak.[156]



Lurraren tokian tokiko grabitatea, balio teorikoarekin alderatuta. Gorriz dauden zonaldeetan grabitatea indartsuagoa da, eta urdinez daudenetan ahulagoa.

### Eremu magnetikoa

*Sakontzeko, irakurri: «Lurraren eremu magnetikoa»*

Lurra iman bat bezalakoa da; iman horren poloak lurburuetatik oso hurbil daude. Horregatik iparrorratzaren orratzak iparraldeko eta hegoaldeko polo magnetikoekin lerroz lerro jartzen dira. Lurraren eremu magnetikoaren zati nagusia nukleoan sortzen da, dinamo prozesu bat sortzen den gunea. Prozesu honetan, konbekzioaren energia zinetikoa eremu magnetikoaren energian eta energia elektrikoan bihurtzen da. Eremua nukleotik kanpora hedatzen da, mantua pasaz, eta Lurraren azalerara iristen da, non gutxi gorabehera dipolo bat dagoen. Dipoloaren poloak Lurraren polo geografikoetatik gertu daude. Eremu magnetikoaren ekuatorean, eremu magnetikoaren gainazalaren indarra 3,05 × 10−5 T da[157]. Nukleoko konbekzio mugimenduak kaotikoak dira; honen ondorioz polo magnetikoak noraezean doaz eta aldian-aldian lerrokatzea aldatzen da. Honek eremuaren aldaketak eragiten ditu. Azken itzulketa duela 700.000 urte inguru gertatu zen[158][159].

#### Magnetosfera

*Sakontzeko, irakurri: «Magnetosfera»*

Lurraren eremu magnetikoak espazioan duen luzapenari magnetosfera deitzen zaio. Eguzki haizearen elektroiak eta ioiak magnetosferak desbideratzen ditu eta eguzki-haizearen presioak magnetosferaren eguneko aldea konprimatzen du, 10 Lurreko erradioko tamainara gutxi gora behera, eta gau aldeko magnetosfera buztan luze batean luzatzen du[160]. Eguzki-haizeen abiadura eguzki haizearekin hedatzen diren uhinen abiadura baino handiagoa denez, arku supersoniko bat sortzen da magnetosferaren eguneko aldean[161]. Kargatutako partikulak magnetosferan geratzen dira; plasmasfera energia baxuko partikulek definitzen dute, zeintzuek eremu magnetikoaren lerroak jarraitzen dituzten Lurrak biratzen duen bitartean[162][163]. Eraztun korrontea eremu magnetikoak eramandako energia ertaineko partikulek osatzen dute[164] eta Van Allenen gerrikoa energia altuko partikulek osatzen dute. Horien mugimendua ausazkoa da, baina magnetosferaren barnean daude[165].


Magnetosferaren zati desberdinen eskema. Eguzki haizea ezkerretik eskuinera doa.

Ekaitz magnetikoetan zehar, partikula kargatuak kanpoko magnetosferatik eta, batez ere, buztanetik desbideratu daitezke, eta eremuaren lerroetatik Lurreko ionosferara doaz. Bertan, atmosferako atomoak kitzikatu eta ionizatu daitezke, aurorak sortuz[166].

## Orbita eta errotazioa

*Sakontzeko, irakurri: «Lurraren mugimenduak»*

Lurra, gainerako planetak bezala, bi higidura nagusiren mendean dago, errotazio higiduraren eta translazio higiduraren mendean, hain zuzen. Lurrak errotazioa, hots, bere ardatzaren gaineko jira osoa egiteko, 23 ordu, 56 minutu eta 4 segundo behar ditu (egunaren iraupena). Halaber, Eguzkiaren grabitazio indarrak erakarrita, Lurrak segundo bakoitzeko 29,8 km egiten ditu Eguzkiaren inguruko orbita eliptikoan zehar (translazioa), eta 365,25 egun behar ditu itzuli osoa egiteko (urtearen iraupena). Lurraren bi higidura horien planoek 23° 27'-ko angelua eratzen dute, ekliptikaren angelua deitua. Planetaren errotazioak sortzen duen indar zentrifugoa dela eta, Lurrak esfera baten eitea du, zapalagoa Ipar eta Hego buruetan Ekuatore aldean baino.


Lurraren errotazio mugimendua 2016ko maiatzaren 29, solstizioa baino aste batzuk lehenago.

### Orbita

*Ikus, gainera: «Makurdura orbital»*

Lurraren errotazio periodoa eguzkiarekiko (batez besteko eguzki-eguna) bataz besteko eguzki denborako 86.400 segundokoa da (86,4000025 SI segundo)[167]. Lurraren eguzki egun bakoitza gaur egun XIX. mendekoa baino zertxobait luzeagoa denez itsasaldien geldiaraztearen ondorioz, egun bakoitza 0 eta 2 SI ms luzeagoa izan daiteke[168][169].

Lurraren errotazio periodoa izar finkoekiko, Lurraren Biraketa eta Erreferentzia Sistemen Zerbitzu Internazionalak (IERS) izar egun deitua, eguzki denborako 86,964.0989 segundokoa da, edo 23 ordu, 56 minutu 4,0989 segundo[170]. Eguzki egunaren bataz besteko iraupena SI segundoetan eskuragarri dago IERSen, bai 1623-2005 tarterako[171] eta baita eta 1962-2005 tarterako[172].

Atmosferako meteoro eta orbita baxuko sateliteak alde batera utzita, zeruko gorputzen itxurazko mugimendu nagusia mendebalderakoa da, 15 º/o edo 15'/min-ko abiadan. Beste modu batera esanda, zeru-ekuatoretik gertu dauden objektuak, eguzki edo ilargiaren itxurako diametroa mugitzen dira bi minutuero. Lurrazaletik, Eguzkia eta Ilargiaren itxurazko tamainak gutxi gorabehera berdinak dira[173][174].

### Errotazioa



Puntu urdin margul bat izeneko argazkia, Voyager 1 espazio-ontziak ateratakoa. Lurra pixel urdin bat besterik ez da 6,4 bilioi kilometrotik ikusia.

Lurrak Eguzkiaren inguruan orbitatzen du, batez besteko 150 milioi km inguruko distantzia batean. Bira oso bat emateko bataz besteko 365.2564 eguzki egun edo urte sideral bat behar ditu. Horrek Eguzkiaren ekialderako itxurazko mugimendua sortzen du izarrekin alderatuta. Mugimendu hau eguneko 1 º ingurukoa da, hau da, 12 orduero eguzki edo ilargiaren itxurazko diametroa. Mugimendu horren ondorioz, batez beste 24 ordu behar ditu (eguzki egun bat) Lurrak bere ardatzaren inguruan biraketa osoa osatzeko eta eguzkia meridianora itzultzeko. Lurraren abiaduraren orbita batez beste 29,78 km/s ingurukoa da (107,200 km/o). Abiadura horretan, Lurraren diametro osoa (12,742 km) zazpi minututan zeharkatuko luke.[131]

Ilargiak eta Lurrak barizentro komun bat orbitatzen dute 27,32 egunero, atzeko izarrekiko erreferentzia hartuta. Lurra-Ilargi sistemaren Eguzkiaren inguruko orbita komunarekin konbinatuta, hilabete sinodikoaren iraupena, ilargi berritik ilargi berrira dagoen tartea, 29,53 egunekoa da. Zeruko ipar polotik ikusita, Lurraren eta Ilargiaren mugimendua eta baita haien biraketa axialak ere, erlojuaren noranzkoaren aurkakoak dira. Eguzkiaren eta Lurraren ipar poloen gainetik begiratuta dagoen ikuspegi batetik, Lurrak norabide berdinean orbitatzen du Eguzkia. Plano orbitalak eta axialak ez daude zehatz-mehatz lerrokatuta: Lurraren ardatza 23,44 gradu dago makurtuta Lur-Eguzki planoaren (ekliptika) perpendikularretik, eta Lurra – Ilargiaren planoa ± 5,1 gradu dago makurtua Lurra – Eguzkia planoarekin alderatuta. Makurdura hau gabe, eklipse bat egongo litzateke bi astetan behin, ilargi eklipseak eta eguzki eklipseak tartekatuz[131][175].

Lurraren Hill esferak, hau da, grabitazio-eragin esparruak, 1,5 milioi km inguruko erradioa du[176][oh 4]. Distantzia honetatik gaindi, Eguzkiaren edo beste planeten grabitazioaren eragina Lurrarena baino handiagoa da. Objektuek Lurra distantzia honen barnean orbitatu behar dute, edo bestela Eguzkiaren grabitazio indarraren ondorioz ihes egin dezakete.

Lurra, Eguzki Sistemarekin batera, Esne Bidean kokatuta dago eta bere erdigunetik 28.000 argi-urte inguruko distantzian orbitatzen du. Plano galaktikotik gora 20 argi urte ingurura dago, Orionen besoan[177].

### Makurdura axiala

*Sakontzeko, irakurri: «Makurdura axial»*




Lurraren makurdura axiala, eta plano orbitalarekiko eta errotazio ardatzarekiko duen erlazioa.

Lurraren inklinazio axiala 23,439281 °-koa da gutxi gorabehera bere orbitako planoaren ardatzarekiko[178], beti zeru poloetara zuzentzen dena. Lurraren makurdura axialaren ondorioz, gainazaleko puntu jakin batera iritsi den eguzki-argia aldatu egiten da urtean zehar. Horrek kliman urtaro aldaketa eragiten du: Kantzer tropikoa eguzkiari begira dagoenean, ipar hemisferioan uda da, eta negua berriz, hego hemisferioan dagoen Kaprikornio tropikoa eguzkiari begira dagoenean, bertan uda delarik. Udan eguna luzeagoa da, eta Eguzkia zeruan gorago igotzen da. Neguan, klima freskoago bihurtzen da eta egunak laburragoak dira.

Zirkulu polar artikoaren gainetik, muturreko kasua ematen da urtearen zati batean batere argirik ez dagoenean. Ipar poloan sei hilabete irauten du egoera honek, eta gau polar izena jasotzen du. Hegoaldeko hemisferioan, egoera alderantzizko da, hegoburua ipar poloaren kontrako norabidean kokatuta baitago. Sei hilabete beranduago, polo honek gauerdian eguzkia izaten du, 24 ordutako egunak, berriro ere hego poloan kontrako egoera ematen delarik.

Konbentzio astronomikoen arabera, lau urtaroak zehazteko solstizioak – makurdura axiala Eguzkitik urrunen edo hurbilen dauden orbitaren puntuak – eta ekinokzioak – makurduraren norabidea eta Eguzkiaren norabidea perpendikularrak direnean – erabiltzen dira. Ipar hemisferioan, neguko solstizioa abenduaren 21aren inguruan gertatzen da; udako solstizioa ekainaren 21etik gertu izaten da, udaberriko ekinokzioa martxoaren 20aren bueltan eta udazkeneko ekinokzioa irailaren 22 edo 23an. Hego hemisferioan, egoera alderantzikatzen da: udako eta neguko solstizioak trukatzen dira eta udaberriko eta udazkeneko ekinozioen datak trukatzen dira[179].

Lurraren ardatz axialaren angelua nahiko egonkorra da denbora luzeetan zehar. Bere inklinazio axialak nutazioa jasaten du; mugimendu txiki eta irregular bat, 18,6 urteko periodo nagusia duena[180]. Lurraren ardatzaren orientazioa (ez angelua bera) ere aldatu egiten da denboran zehar, 25.800 urte behar dituelarik zirkulu oso bat osatzeko. Prezesioa deitzen zaio honi. Mugimendu hau urte sideral baten eta urte tropikal baten arteko desberdintasunaren arrazoia da. Bi mugimenduak Eguzkiaren eta Ilargiaren erakargarritasun desberdinak eragiten dituzte. Poloak, halaber, Lurreko gainazaletik metro gutxi batzuk mugitzen dira. Mugimendu polar honek hainbat osagai zikliko ditu, zeinak kolektiboki mugimendu kuasiperiodiko izena jasotzen duten. Honetaz gain, Chandlerren kulunka deritzon mugimendua ere jasaten du. Lurraren biraketa-abiadura ere aldatu egiten da, egunaren luzeraren aldaketa bezala ezagutzen den fenomeno bat sortuz[181].

Gaur egun, Lurraren perihelioa urtarrilaren 3aren inguruan gertatzen da eta afelioa uztailaren 4arenean. Data hauek denboran zehar aldatzen dira, prezesioaren eta beste faktore orbital batzuen ondorioz. Denboran ziklikoak dira eta Milankovitch ziklo gisa ezagutzen dira. Lur eta Eguzkiaren arteko distantzia aldaketarengatik, desberdintasuna ematen da Lurrak jasotzen duen eguzki energia kantitatean. Perihelioan % 6,9 handiagoa da afelioarekin alderatuta. Hegoaldeko hemisferioa Eguzkirantz dagoenez periheliora iristean, hemisferio honek iparraldekoak baino eguzki energia kantitate zertxobait handiagoa jasotzen du urtean zehar. Dena den, efektu honek askoz garrantzi gutxiago dauka makurdura axialak eragiten duena baino, eta jasotzen duen energia gehigarri gehiena hegoaldeko hemisferioan dagoen ur proportzio handiagoak barneratzen du[182].

2016ko ikerketa baten arabera, Bederatzigarren planetak Eguzki Sistemako planeta guztiak 6 gradu makurtu zituen, Lurra barne[183].

## Bizigarritasuna



Kanadako Mendi Harritsuak, behean Moraine aintzira dutelarik

Bizitza sostengatu ahal duen planeta bati bizigarria deitzen zaio, nahiz eta bizitza ez den bertan sortu. Lurrak ur likidoa eskaintzen du; molekula organiko konplexuak elkartu eta elkarreragin dezaketen ingurunea eta nahikoa energia metabolismoa mantentzeko[184]. Lurretik Eguzkirako distantzia distantziak, baita orbitaren eszentrikotasunak, biraketa-tasak, makurdura axialak, historia geologikoak, atmosferak eta eremu magnetikoak lurrazaleko egungo baldintza klimatikoak direnak izaten laguntzen dute[185].

### Biosfera

*Sakontzeko, irakurri: «Biosfera»*

